† Aitaren eta Semearen eta Espiritu santuaren izenean.
—Amen.
† Jesukristo gure Jaunaren grazia eta Jainko Aitaren maitasuna eta Espiritu santuaren batasuna izan bediz zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

**Damu-otoitza**

Senideok: santuen bizitzak gure bizitzako eredutzat emoten deuskuzan Jainko Aitari zuzendu gakiozan damutasunez:

—Jesus Jauna, Jainkoaren nahia ezagutzera ***ga***roazuzana, **Erruki, Jauna**!
—Jesus Jauna, zure gose direnak zeure hitzaz jana***ri***tzen dozuzana, **Kristo, erruki**!
—Jesus Jauna, Jainko Aita errukitsua dalako errukitsu**ak** nahi gaituzuna, **Erruki, Jauna**!

† Erruki dakigula Jainko guztiz ahaltsua, eta gure pekatuak parkaturik eroan gaizala betiko bizitzara.
— **Amen**.

**Otoitza:**

† Egin dagigun otoitz *(isil une bat)*

Toursko Martinek alkartu gaitu
Arrainon aldare inguruan
Jaunaren Hitza entzun ondoren
eroateko barruan
bere Legea: pobreentzako
laguntza, maitasunean.
*Emon dagigun geure berbea*

*Toursko Martinen aurrean.*
Zure Seme Jesukristo gure Jaunaren bitartez... — Amen.

**San Paulo apostoluak Kolosarrei egindako idazkitik** (Kol 3, 12-17)

Senideok: Jainkoak maitatu eta bere herri santu izateko aukeratu zaituen ezkero, jantzi zaiteze bihozberatasunez, ontasunez, apaltasunez, otzantasunez, pazientziaz.

Izan eroapen oneko alkarrekin eta parkatu batak besteari, inork inoren aurka ezer baleu. Jaunak parkatu deutsuen lez, parkatu zuek ere alkarri.

Eta gauza guztien gainetik, jantzi zaiteze maitasunez, hauxe da-ta alkartasun betearen lokarria.

Kristoren bakea izan bedi nagusi zuen bihotzetan, horretara deitu zaitue-ta Jainkoak gorputz baten alkartuz. Eta izan zaiteze esker oneko.

Bizi bedi oparo zuengan Kristoren mezua. Irakatsi eta zentzarazi alkar jakituria osoz. Abestu Jainkoari esker onez eta bihotzez salmoak, goratzarreak eta kantu inspiratuak.

Eta esan nahiz egin daizuen guztia, egizue Jesus Jaunaren izenean, honen bidez Jainko Aitari eskerrak emonez.

***Jaunak esana***

**Erantzun salmoa**

R/. JAUNA DOT ARTZAIN; EZ NAZ EZEREN BEHARREAN

Larra gurietan etzunazoten nau, †
atsedenezko iturrira naroa,
eta bizkortu egiten deust barrua.
Ba naroa bidezidor zuzenetatik,
bere izenagaitik. R./

Ibar ilunetan banabil ere, ez naz gatx-bildur,
zu neugaz zagoz-eta;
zure zigorra ta makilea,
honeexek dira nire poza.   R./
Atontzen deustazu mahaia,
arerioak daukadazala begira;
orioz igursten deustazu burua:
gainezka dago nire edontzia.   R./

Zoriona ta grazia ditut aldean,
nire bizitza guztiko egunetan;
eta Jaunaren etxean bizi izango naz
luzaroen luzaro.   R/.

**† Jesukristoren ebanjelioa san Mateoren liburutik** (5, 13-16)

Aldi haretan hauxe esan eutsen Jesusek bere ikasleei: «Zuek munduarentzat gatza zaree. Baina gatza gezatzen bada, zelan gazitu barriro? Ez dau ezertarako balio, botateko baino, eta jendeak zapaltzeko.

«Zuek munduarentzat argia zaree. Ezin daiteke ezkutatu mendi gainean dagoan uria. Kriseilua ere ez da bizten ontzipean ipinteko, argimutilaren gainean baino, etxeko guztiei argi egiteko. Era berean, zuen argiak danen aurrean egin behar dau argi, zuen egintza onak ikusiz, zeruko zuen Aita goretsi daien.

(*Edo beste heneexek: Ef 4, 1-7.11-13; Sal 39; Lk 22, 24-30*)

## HOMILIA

**ESKARIAK**

† Martinek eta lehenengo kristinauek inguruagazko burrukan bizi izan eben Jesukristori jarraitzea; gu ingurura egokituegiak gagoz eta ez dogu emoten Jesusek gugandik itxaroten dauan Barri Onaren poztasunik. Jo daigun erregura Jaunak berak atara gaizan gure lo-zorrotik:

—Elizearen alde: bere ingurura egokitu ez daiten, eta bere zikinkerietatik urten ahal izan daian, bere seme-alabak testigantza bizitzara bultzatu ahal izan daizan, *(egin daigun otoitz) eskatu deiogun Jaunari*.

—Eliz-agintari, herri-agintari, erakundeetako buruzagi eta familietako buruek, euren bizitza eta iragarten dabena bat etorri daitezala bilatu daien, beti ahulenaren alde jokatuz, *(egin daigun otoitz) eskatu deiogun Jaunari*.

—Hilbetearen azkenera heldu-ezinik, lanik ezak edo diru-sarrerarik ezak jota, edo gizarte honetan lekurik aurkitu-ezinik dabizanen alde: gizarte hau zuzenagoa, alkartuagoa eta alboratuekaz arduratuagoa izatera bultzatu daien, *(egin daigun otoitz) eskatu deiogun Jaunari*.

—Gure herrietako hartu-emonetan alkar errespetatzen jakin daigun, noren lepotik barre egitea bilatu ez daigun, eta ondokoaren beharrizanei ere erantzuten jakin daigun, *(egin daigun otoitz) eskatu deiogun Jaunari*.

—Martinen omenez alkartuz otoitzean

dihardugunok, berak orduan lez guk gaur, Jesus Jaunaren ikasle eta jarraitzaile zintzoak izatea bilatu daigun, eliz alkarteko bizitzea eta sinismen ospakuntzak biziagotuz, *(egin daigun otoitz) eskatu deiogun Jaunari*.

† Zeure maitasunean sortu eta eusten deuskuzun Jainko Jauna: egin gaizuz zure Semearen jarraitzaile eta autorle adoretsu gure eguneroko bizitzan; Jainko eta errege bizi da-ta, gizaldi eta gizaldietan.

—Amen.

## EUKARISTIAREN LITURGIA

### Eskeintza

Bedeinkatua zu, Jauna, zeru-lurren Jainkoa, zeure esku zabaletik hartu ditugu orain ekarri deutsuguzan ogi-ardauok, lurraren indarrak eta gizakiaren lanak sortuak: honeexek egingo jakuz biziaren ogi ta betiko zorionaren edari.

—***Bedeinkatua zu, Jauna, orain eta beti***.

Senideok: egin daigun otoitz, guztiok batean, Eliza osoaren oparia Jaungoikoari eskeintzerakoan.

—***Jainkoa goresteko eta gizakiak salbatzeko***.

### Oparien gaineko otoitza

Meza honetan eskeintzen doguz
ardaua eta ogia
baita pobreen alde jokatzen
emoten dogun bizia.
Egizaleak izanik daigun

bideratu justizia,
*pobreentzako benetan daiten*
*izan gure eukaristia.*

Jesukristo.
—Amen.

**Prefazioa**

V./ Jauna zuekin R./ Eta zure espirituarekin
V./ Gora bihotzak R./ Jaunagan daukaguz
V./ Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari
R./ Egoki da eta zuzen.
Egoki da, bai, eta zuzen
non-nahi ta beti zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jaungoiko ahalguztidun, betiko horri,
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

Zure santuen fede-autormen ederraz
indar barria emoten deutsozu zure elizeari
eta argiro erakusten guri zure maitasuna
zure seme-alaben asmoa gugan bete dadin
Santuen ejenplu ederrak eragiten deusku
eta euren otoitzak laguntzen.

Horregaitik geuk ere
aingeru eta santu guztiekin batean
goresten zaitugu, Jauna,
poz betean kantari: SANTU, SANTU, SANTUA…

**SANTU, SANTU, SANTUA**
Santu, Santu, Santua
diren guztien Jainko Jauna.

Zeru-lurrak beterik daukaz zure diztirak.
Hosanna zeru goienetan!
Bedeinkatua Jaunaren izenean datorrena.
Hosanna zeru-goienetan!

## Eukaristi-Otoitza II

Santu zara, bai, Jauna, eta santutasun guztiaren iturri.
Santu egizuz, ba, ogi ta ardao honeik,
zeure Espiritua isuriz,
Jesukristo gure Jaunaren
Gorputz † eta Odol egin daitezan guretzat.
Berak, saldu ebenean, eta bere gogoz kurutzera joiala,
ogia hartu eta eskerrak emonez,
zatitu eban, eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

*Hartu eizue ta jan guztiok honetatik:*
*hau neure gorputza da-ta,*
*zuentzat emongo dana.*

Afal-ondoan bardin, kaliza harturik,
barriz ere eskerrak emonez,
bere ikasleei emon eutsen, esanez:

*Hartu eizue ta edan guztiok honetatik:*
*hau neure odolaren kaliza da-ta,*
*itun barri ta betikoaren odola,*
*zuentzat eta guztientzat*
*pekatuak parkatzeko isuriko dana.*
*Egizue hau neure oroigarri...*

**V./ Hau da sinismenaren misterioa.**

*R./ Hil eta biztu zarala, Jauna, zu barriz etorri arte*
*hau dogu hau Barri Ona.*

*R./ Ogi-ardao honeik hartzean*
*zure heriotza dogu autortzen*
*zu, Jauna, etorri artean.*

Horregaitik, Jauna,
zure Semearen heriotzea ta biztuerea gogoratuz,
biziaren ogia ta salbamenaren kaliza
eskeintzen deutsuguz,
zuri eskerrak emonaz
altaran zure zerbitzari onartu gaituzulako.
Eta apalik eskatzen deutsugu,
Kristoren gorputz-odolak hartzen doguzanok
Espiritu santuak bat egin gaizala.

Gogoan izan, Jauna,
mundu guztian zabaldurik dagoen zure Elizea;
eroaizu maitasun osora,
Franzisko, gure aita santuagaz,
Mario gure artzainagaz
eta eliz gizon-emakume guztiekaz batean.

Gogoan izan, Jauna,
bizteko itxaropenean joan diren: I... (egunekoak)
eta gure etxeko, senide eta hildako guztiak:
hartu eizuz zure aurpegiaren argitan.

Erruki zakiguz, arren, guk guztiok
betiko bizitzea jaritsi daigun,

Jaungoikoaren Ama Maria dohatsuarekin,
Apostolu santuekin, Martin santuarekin
eta gizaldi guztietan,
zure adiskide izan diran santuekin;
eurekin batean goratu zaiguzan.
Jesukristo zure Semearen bitartez.]

HONEN BITARTEZ, HONEKIN ETA HONENGAN
ZURI, AITA, JAUNGOIKO AHALGUZTIDUN HORRI
ESPIRITU SANTUAREKIN BATEAN
OSPE TA AINTZA GUZTIA
GIZALDI TA GIZALDI GUZTIETAN.
—Amen.

Salbatzaileak agindu ta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur
egun hontako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
eta ez gu tentaldira eroan,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik,
emoiguzu bakea gure egunotan,
zure errukiari esker pekatutik gabi bizi izan gaitezan
eta estualdietan sendo;
betiko zorionaren itxaropenean,
Jesukristo gure Salbatzailea
noiz etorriko dan zain gagozela.

*—Zeurea dozu erregetza; zeureak ospe ta indarra*

*orain eta beti.*

**BAKE ESKEINTZEA** (Abadeak)

† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei 'bakea izten deutsuet, neure bakea emoten'; begira zure Elizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa denez, emoiozu elizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.
—*Amen.*

† Jaunaren bakea beti zuekin
—*Eta zure espirituarekin.*

† Emon deiogun bakea alkarri.

Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*
Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*

Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *emoiguzu bakea*

**JAUNARTZEA**

† Hona hemen Jainkoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak honen mahaira deituak:

—Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko,
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

## Jaunartzerako abestia

**R/. Jauna dot Artzain, ez dot izango nik goserik;**
**hark emongo deust zer-jan onik.**

[1] *Neu naz zerutik lurrera jatsi dan ogia*
*Aitak danori eskeinia.*

[2] *Nire gorputza egiz dozue janaria*
*ta nire odola edaria.*

[3] *Ogi hau jaten dauana beti da biziko,*
*hilterik ez dau ikusiko.*

## Jaunartze ondorengoa

Toursko Martinen omenez dogu
ospatu meza santua;
bera dogula eredu-lagun
eroan dagigun sua.
Pobrezia ta injustizia
ezabatzeko gogua;
*maitasunezko sutean daiten*
*kixkali gure mundua.*

Jesukristo.
—Amen.

## Azken onespena

† Jauna zuekin.
*- Eta zure espirituarekin*

† Bedeinka ta gorde gaizala Jainko ahalguztidunak:
Aitak eta Semeak eta Espiritu Santuak.
- *Amen*.

